# DONOSTIYAN
## IRUGARREN ARZAIGOQUIA
### URTE 1828 GARRENECO IGANDE IÑAUTERI GOIZEAN.

## MARCHA.

Atozte arzayac , ariñ atozte
Guacen guztiyoc festará ,
Aita JOSEPHE buru degula
Donostiyaco plazará :
Caletarrai escainzen gatoz
Amoriyozco doayac ,
Soñu ederrac , danza politac ,
Canta euscarazco eztiyac.

Greciyatican etorri eta
Amaicagarren urtean ,
Irugarrena degu arzayac
Donostiyaco calean :
Iñauteriyan soñuarequin
Isildu gabe cantatzen ,
Gabaz ta egunaz beti danzan ta
Beñere ez guera necatzen.

## ARZAI-CANTA.

Eman genduen itza
Lenago bi aldiz
Etorrico guiñala
Iñoiz edo berriz :
Irugarren aldiyan
Aurten emen guerá
Donostiar maiteac
Zubec ecustera.

Oraiñ amaica urte
Eta oraiñ zortzi
Donostiya guenduben
Lenago ecusi :
Ordutic oneraño
Ez guenduen uste ,
Aurreratu cirala
Lanac onembeste.

Etorri gueranean
Plaza cantoyerá
Dirá pozez malcoac
Aguertu beguirá :
Esan nayagatican
Dá esan eciña ,
Gure biyotzac artu
Duen atseguiña.

Berrirotic eguiten
Zauden Donostiya ,
Ederra becelache
Cerade alaya :
Guztiz maitagarriya
Cedorren gendeá
Eciñ izan diteque
Dan baño obea.

## *EUSCARICHOA.*

*Arzayac oroipena*
*Iñauteriyari ,*
*Goizetic arratsera*
*Dantzan ta cantari :*
*Beti humore ona*
*Gure soñubaquin*
*Adisquide ta maite*
*Donostiarraquin.*

# ZORZICOA.

BAT.

Zorzicoa cantari
Menditic, calerá
Donostiyara pozez
Gaur etorri guerá:
Ariñ maquil saltoan
Aldapetan berá
Iñauteriyetaco
Festac ecusterá.

BI.

Arzayac izan arren
Gure danzariyac,
Dirá guztiz lirañac,
Datoz chit galayac:
Colore ederrezco
Berdiñac janciyac,
Escubetan politac
Maquil ta uztayac.

IRU.

Danza lecu ederra
Olezco biguñá,
Plazan dago berriro
Gaur bertan eguiñá:
Ecusteco norc duben
Zancoa ariña,
Eta ceñec obeto
Darabillen oña.

LAU.

Cer ecusi gueyago
Izan dezan festác,
Eta luceagoa
Iraupena goizác:
Arzayaquin batean
Datoz gaur modistác,
Josten eta bordatzen
Languille politác.

BOST.

Guztiz ondo daquite
Eguiten cofiyac
Colorezco cintaquiñ
Modara jarriyac:
Oi ez becelacoac
Dirá neurri gayac
Buru colocac, eta
Illez estaliyac.

SEI.

Len, oraiñ, eta beti
Caletar maiteac
Zubentzat esquer onez
Biyotzac beteac:
Oroituco guerade
Juan arren urteac
Gure demboran, eta
Ondoren semeac.

